## MEZA BAKARRA OSPATZEN DANERAKO

### I. IRAKURGAIA

*Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana.*

Job liburutik

*Jb* 19, 1. 23-27a

Jobek esan eban:
«Ai nire hitzak idatzita geldituko balira,
liburuan ezarrita!
Edota burdinazko eztenaz eta berunaz
betiko grabatuta hatxean!

Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana
eta, azkenean, hautsaren gainetik jagiko dala.
Nire narruazal hau hondatu ondoren,
gorputzik barik, Jainkoa ikusiko dot.
Nik neuk ikusiko dot, eta ez bestek».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 63 [62], 2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. ik. 2c)

R/. **Zure egarriz daukat gogoa,**
**Jauna, ene Jainkoa!**

V/. Jainko, Zu ene Jainko,
goizetik nabilkizu bila,
zure egarriz daukat gogoa, zure gogo

biziz ni nazan guztia,
lur idor, agor, ur bakoa bezala. R/.
V/. Holan egon nahi dot santutegian Zuri begira,
zure indarra eta ospea ikusiz.
Bizia baino ederragoa da-eta zure maitasuna,
goratuko zaitue nire ezpanek. R/.
V/. Holan nahi zaitut bedeinkatu neure bizitzan,
eskuak jaso zure izenean.
Jakirik gozoenez lez naz asetuko,
eta nire ezpanek poz-oihuz zaitue goratuko. R/.
V/. Zeu izan zaitut-eta laguntzaile;
pozez egingo dot oihu zure egoen kerizpean.
Zuri lotuta nago osorik,
eta zure eskumak deust eusten. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jainkoak Kristoren odolaz zintzotzat hartu gaituala,*
*salbatuko gaitu zigorretik beraren bitartez.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 5, 5-11

Senideok: Itxaropenak ez dau huts egiten, Jainkoak bere maitasuna isuri

deusku-eta bihotzera, emon deuskun Espiritu Santuaren bitartez. Oraindino pekatupean indar barik gengozala, Kristo, Jainkoak erabagitako sasoian, gaiztoen alde hil zan. Nekez onartuko leuke norbaitek pertsona zuzen baten alde hiltzea; halan be, pertsona on baten alde baleiteke norbait hiltzeko prest egotea.

Baina Kristo gu oraindino pekatari ginala hil zan gure alde: honan erakusten dau Jainkoak guri deuskun maitasuna.

Orain Jainkoak Kristoren odolaz zintzotzat hartu gaituala, zenbatez gehiago ez ete gaitu salbatuko zigorretik beraren bitartez!

Arerio ginala, Jainkoak beragaz adiskidetu baginduzan bere Semearen heriotzari esker, zenbatez gehiago, behin adiskidetu ezkero, ez ete gaitu salbatuko haren biziari esker! Oraindino gehiago, harrotu be egiten gara Jainkoaz Jesu Kristo gure Jaunari esker, honen bitartez Jainkoagaz adiskidetzea lortu dogu-eta honezkero.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Ap* 14, 13

R/. **Aleluia.**

V/. Zorionekoak aurrerantzean Jaunagaz bat eginik hiltzen diranak;
atseden hartuko dabe euren nekeetatik,
lagun dabez-eta euren egintza onak. R/.

## EBANJELIOA

*Semeagan sinisten dauanak betiko bizia dau,*
*eta Neuk biztuko dot azken egunean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 6, 37-40

Aldi, haretan esan eutson Jesusek jenteari: Aitak Niri emoten deustan guztia Neugana etorriko da, eta Nigana etortzen danik ez dot kanpora botako, ze, ez naz zerutik jatsi neure nahia egitera, bialdu nauanaren nahia baino.

Eta hauxe da bialdu nauanaren nahia: berak emon deustan guztitik, ez dagidala ezer be galdu, ezpada ze, biztu dagidala azken egunean. Hauxe da nire Aitaren nahia: Semea ikusi eta harengan sinisten dauanak izan dagiala betiko bizitza; eta Neuk biztuko dot azken egunean».

Jaunak esana.